# Ozeania

**Ozeania** Asiaren hegoaldean dagoen kontinentea da, Ozeano Barean kokatua. Uhartez osatuta dago. Uharte nagusia Australia da. Australiaz aparte, Papua Ginea Berria, Zeelanda Berria, eta Mikronesia, Polinesia eta Melanesiako uhartediek ere osatzen dute Ozeania.

**Ozeania**



| | |
|---|---|
| **Azalera** | 9.008.458 km² |
| **Biztanleria** | 38.277.000 bizt. (2013) |
| **Biztanle-dentsitatea** | 4 bizt/km² |
| **Jentilizio** | ozeaniar |
| **Herrialdeak** | 14 |
| **Dependentziak** | 25 |
| **Hizkuntzak** | indonesiera, frantses, ingeles eta beste asko |
| **Ordu-eremuak** | UTC-6-UTC+8 |
| **Hiri nagusiak** | Sydney, Melbourne, Brisbane, Perth, Auckland |

## Eduki-taula



## Historia

*Sakontzeko, irakurri: «Ozeaniako historia»*

Eskualdeko lehenengo biztanleak Asiako hego-ekialdetik etorritako gizakiak ziren.

Kontinentea ikusteko lehendabiziko europarra Fernao de Magalhaes zen. Hau, Filipinetan hil baino lehenago, Marianak eta beste Ozeaniako uharteak aurkitu zituen. Segidan, portugaldarrek eskualdea esploratu zuten: 1525ean Karolinak aurkitu zituen eta hurrengo urtean Ginea Berria. Nederlandarrek 1642an Australiako kosta esploratu eta Tasmania, Tonga, Fiji eta Bismarck aurkitu zituen. Bitartean Mexikoko Acapulcotik eta Peruko Callaotik espainiarrek Ozeano Bareko uharte asko aurkitu zituzten espedizio asko bidali zituen.

XVIII. mendean, britainiarrek eta frantsesek eskualdea esploratu zuten. 1764 eta 1770 artean, britainiarrek Tahiti, Samoa, Salomon eta Hebrida Berriak esploratu zituzten. James Cook 1768 eta 1779 artean, Zeelanda Berrira, Markesetara, Hebrida Berrietara eta Hawaiira heldu zen. Frantsesek bere kabuz uharte berak esploratu zituzten. Azkenean, Erresuma Batuak, Frantziak eta beste nazioek Ozeania banatu zuten.

Kontinente gehiena uharte gutxiko nazio txikiak dira. Australia herrialde kontinental bakarra da.

## Geografia

### Informazio orokorra

Uharte talde hau Asia hego-ekialdetik Ozeano Baretik Amerikarantz luzatzen da, australiar uhartea lur multzo handiena izaki. Segidan gertuko Papua Ginea Berria eta Zeelanda Berria uhartedi txikiagoak eta beste Ozeano Barean sakabanatuta 25.000 uharte txikiak doaz.

*Ozeania* izena, beste kontinenteak ez bezala, Ozeano Barean eta gertuko itsasoetan dagoelako datorkio. Izena lehendabizikoz Dumont frantses esploradoreak 1831an asmatu zuen. Ohituraz, Ozeaniako eskualdeak Mikronesia, Melanesia, Polinesia eta Australasia izan dira, baina geografoek Ozeania *Ozeania Hurbila* eta *Ozeania Urruna* eskualdetan banatu dute.

9.008.458 km² area duenez, munduko kontinenterik txikiena da. Kontinenteko lekurik altuena 4.884 metrotako Puncak Jaya mendia da (Papua Ginea Berria) eta beheena - 16 metrotara dagoen Eyre lakua da (Australia). Hegoaldeko Alpeak mendilerroa ere nabarmentzeko modukoa da, Aoraki/Mount Cook izanda bertako tontorrik altuena (3.754 m).

### Uharte eta uhartedi nagusiak

1. **Australia**: 7.686.850 km².
2. Papua Ginea Berria: 462.840 km².
3. Papua (Indonesia): 319.036 km².
4. Zeelanda Berria: 268.680 km².
5. Mendebaldeko Papua (Indonesia): 140.375 km².
6. Salomon Uharteak: 28.450 km².
7. Kaledonia Berria: 19.060 km².
8. Fiji: 18.270 km².
9. Hawaii: 16.636 km².
10. Vanuatu: 12.200 km².
11. Polinesia Frantsesa: 4.167 km².
12. Samoa: 2.944 km².



Ozeaniako mapa

## Demografia

### Populazioa

Lurralde hau munduko biztanleria gutxien duen lurraldea da, Antartika kontuan hartu gabe. Biztanleria oso anitza da, etorkin europarren ondorengoak, Australiako aborigenak, Zeelanda Berriko maoriak, Melanesia, Mikronesia edo Polinesiako indigenak, eta gutxiengo beltzaran bat ere aurki daitezke.

Lurralderik populatuenak hauiek dira, 100.000 biztanletik gorakoak:

1. **Australia**: 24.125.848 biztanle 2016an.
2. Papua Ginea Berria: 8.084.991 biz.
3. Zeelanda Berria: 4.660.833 biz.
4. Papua (Indonesia): 3.486.432 biz.
5. Hawaii: 1.360.301 biz.
6. Fiji: 898.760 biz.
7. Mendebaldeko Papua (Indonesia): 760.855 biz.
8. Salomon Uharteak: 599.419 biz.
9. Polinesia Frantsesa: 280.208 biz.
10. Kaledonia Berria: 272.677 biz.
11. Vanuatu: 270.402 biz.
12. Samoa: 195.125 biz.
13. Guam: 162.896 biz.
14. Kiribati: 114.395 biz.
15. Tonga: 107.122 biz.
16. Mikronesiako Estatu Federatuak: 104.937 biz.

Ozeaniako hiri nagusiak Australian daude batez ere, hona hemen:

1. **Sydney** 4.4 milioi biztanle (Australia).
2. Melbourne 3.5 milioi biztanle (Australia).
3. Brisbane 1.8 milioi biztanle (Australia).
4. Perth 1.4 milioi biztanle (Australia).
5. Adelaida 1.1 milioi biztanle (Australia).
6. Auckland 1.07 milioi biztanle (Zeelanda Berria).
7. Gold Coast 550.000 biztanle (Australia).

### Hizkuntzak

Gehien erabiltzen den hizkuntza ingelesa da, Australian, Papua Ginea Berrian, Zeelanda Berrian, Hawaiin, Fijin eta Salomon Uharteetan hizkuntza nagusia, besteak beste. Frantsesa da bigarren hizkuntza hiztunei dagokienez, Kaledonia Berrian eta Polinesia Frantsesean bereziki. Txileren subiranotasuna diren uharte txiki batzuetan gaztelania ere hitz egiten da.

Samoera (koofiziala Samoan, 350.000-500.000 hiztun inguru), fijiera (koofiziala Fijin, 340.000 hiztun inguru), Tok pisin eta Hiri Motu (koofizialak Papua Ginea Berrian, 1.000.000 eta 120.000 hiztun inguru, hurrenez hurren), tongera (koofiziala Tongan, 180.000 hiztun inguru) maoriera (koofiziala Zeelanda Berrian, 100.000-160.000 hiztun inguru) eta beste jatorrizko hizkuntza batzuk dialekto desberdinetan

kontserbatu dira.

### Etniak

Kanakak, maoriak, negritoak, papuarrak, txamorroak eta Australiako aborigenak.

### Erlijioa

Protestantismoa da erlijio nagusia, Katolizismoarengatik jarraitua, indigenen erritu eta sinesmenak ere badira.

## Ozeaniako lurraldeak

### Estatuak

- Australia
- Fiji
- Indonesia
- Kiribati
- Marshall Uharteak
- Mikronesiako Estatu Federatuak
- Nauru
- Palau
- Papua Ginea Berria
- Salomon Uharteak
- Samoa
- Tonga
- Tuvalu
- Vanuatu
- Zeelanda Berria

### Beste estatuen menpe dauden lurraldeak

- Ipar Marianak - Estatu Batuak
- Guam - Estatu Batuak
- Samoa Estatubatuarra - Estatu Batuak
- Niue - Zeelanda Berria
- Tokelau - Zeelanda Berria
- Kaledonia Berria - Frantzia
- Wallis eta Futuna - Frantzia
- Polinesia Frantsesa - Frantzia

## Ozeaniar nabarmenak historian zehar

- Ernest Rutherford (Zeelanda Berria, 1871-1937), Kimikako Nobel sariduna.
- Katherine Mansfield (Zeelanda Berria, 1888-1923), ipuingilea eta poeta.
- Patrick White (Australia, 1912-1990), Literaturako Nobel sariduna.
- Edmund Hillary (Zeelanda Berria, 1919-2008), Everest mendira igo zen lehenengo alpinista historian.
- Bon Scott (Australia, 1946-1980), abeslaria AC/DC taldean.
- Olivia Newton-John (Australia, 1948-), aktorea eta abeslaria.
- Jane Campion (Zeelanda Berria, 1954-), zinema-zuzendaria.
- Nick Cave (Australia, 1957-), abeslaria.
- Russell Crowe (Zeelanda Berria, 1964-), zinema-aktorea.
- Kylie Minogue (Australia, 1968-), abeslaria.
- Jonah Lomu (Zeelanda Berria, 1975-2015), errugbi jokalaria.

## Kanpo estekak

| | |
|---|---|
| **Autoritate kontrola** | **Wikimedia proiektuak** · Datuak: Q538 · Multimedia: Oceania (https://commons.wikimedia.org/wiki/Category:Oceania)<br>**Identifikadoreak** · WorldCat (https://www.worldcat.org/identities/containsVIAFID/253275800) · VIAF: 253275800 (https://viaf.org/viaf/253275800) · GND: 4044257-3 (https://d-nb.info/gnd/4044257-3) · LCCN: sh85093910 (https://id.loc.gov/authorities/sh85093910) · NDL: 00568945 (https://id.ndl.go.jp/auth/ndlna/00568945) · NKC: ge130287 (https://aleph.nkp.cz/F/?func=find-c&local_base=aut&ccl_term=ica=ge130287) · NARA: 10035694 (https://catalog.archives.gov/id/10035694) · **Hiztegiak eta entziklopediak** · Britannica: url (https://www.britannica.com/place/Oceania-region-Pacific-Ocean) · **Lekuak** · TGN: 1000006 (https://www.getty.edu/vow/TGNFullDisplay?find=&place=&nation=&english=Y&subjectid=1000006) · **Medikuntzako identifikadoreak** · MeSH: D044349 (https://meshb.nlm.nih.gov/#/record/ui?ui=D044349) |

- تۆرکجه
- Башҡортса
- Bali
- Žemaitėška
- Bikol Central
- Беларуская
- Беларуская (тарашкевіца)
- भोजपुरी
- Bislama
- Banjar
- Bamanankan
- বাংলা
- བོད་ཡིག
- Brezhoneg
- Bosanski
- Буряад
- Mìng-dĕ̤ng-ngṳ̄
- Нохчийн
- Cebuano
- کوردی
- Corsu
- Qırımtatarca
- Чӑвашла
- Cymraeg
- Zazaki
- Dolnoserbski
- डोटेली
- Ελληνικά
- Esperanto
- Eesti
- Estremeñu
- Fulfulde
- Võro
- Føroyskt
- Arpetan
- Nordfriisk
- Furlan
- Frysk
- Gaeilge
- Gagauz
- 贛語
- Kriyòl gwiyannen
- Gàidhlig
- Galego
- گیلکی
- Avañe'ẽ
- 𐌲𐌿𐍄𐌹𐍃𐌺
- 客家語/Hak-kâ-ngî
- हिन्दी
- Fiji Hindi
- Hrvatski
- Hornjoserbsce

- नेपाली
- नेपाल भाषा
- Norsk nynorsk
- Novial
- Nouormand
- Sesotho sa Leboa
- Occitan
- Livvinkarjala
- ଓଡ଼ିଆ
- Ирон
- ਪੰਜਾਬੀ
- Picard
- Norfuk / Pitkern
- Piemontèis
- پنجابی
- Ποντιακά
- پښتو
- Runa Simi
- Rumantsch
- Armãneashti
- Tarandíne
- Русиньскый
- Kinyarwanda
- संस्कृतम्
- Саха тыла
- Sardu
- Sicilianu
- Scots
- Davvisámegiella
- Srpskohrvatski / српскохрватски
- Slovenčina
- Slovenščina
- Gagana Samoa
- ChiShona
- Soomaaliga
- Shqip
- Sranantongo
- Seeltersk
- Sunda
- Kiswahili
- Ślůnski
- தமிழ்
- ತುಳು
- తెలుగు
- Tetun
- Тоҷикӣ
- ไทย
- Türkmençe
- Tagalog
- Tok Pisin
- Xitsonga
- Татарча/tatarça
- Reo tahiti
- ئۇيغۇرچە / Uyghurche

